# JAUNAREN BIZTUERAKO PAZKO-DOMEKEA

## SARRERAKO OHARKIZUNA

Senideok: Bart, gaueko elizkizunean, barri pozgarri hau emon jakun: "Zuek bilatzen dozuen Jesus biztu egin da! Ez dago hilobian". Eleizeak orain ia bi mila urte jaso eta harrezkero urtero ospatu dauan barri on pozgarri honek batu gaitu altara inguru honetara. Prestau daiguzan gure gogo-bihotzak urteko mezarik nagusienean parte hartzeko.

Jesús ha resucitado. Esta es nuestra fe. Y porque Él resucitó, nuestra vida tiene ya una dimensión nueva, un nuevo sentido. Su dimensión se prolonga a la vida eterna; su sentido hacia el Señor, el amor de los unos a los otros, la alegría de la fe.

**R/.** B**iztu da Kristo, Aleluia. Guregan dago, Aleluia**.

*—Jainkoak dau-ta gaur Kristo biztu: Aleluia!*
*Bere indarrez biztuko gaitu: Aleluia, Aleluia. R/.*

*—Gure gorputza dau-ta egoitza: Aleluia!*
*Orain berekin gaitu bat egin: Aleluia, Aleluia. R/.*

*—Jaunari kanta, goresmen eman: Aleluia!*
*bai bihotz eta bai gorputzean; Aleluia, Aleluia. R/.*

## AINTZA ZERUETAN

Jauna biztu dalako pozez gainezka, kantau daigun gure Jaungoikoaren aintza.

## HITZAREN LITURGIA

## Ap Eg 10, 34a. 37-43:

Pazkoaldi osoan zehar, lehenengo irakurgaia Apostoluen Eginak deitzen dan liburutik hartzen da. Apostoluen esana gure fedearen oinarria da. Euren antzera, izan gaitezan geu ere Kristo biztuaren testigu.

A la base de nuestra fe, hay unos hechos históricos. Pero la adhesión de la fe se da a la Palabra de Dios

predicada por los “testigos” que Él ha designado.

**Erantzun Salmoa: 117. salmoa**

Poztasunez beterik bat egin daigun salmisteagaz gure eskerrona adieraziz.

La Iglesia repite incansablemente en este día de Resurrección la aclamación “*Este es el día en que actuó el Señor: sea nuestra alegría y nuestro gozo*”.

**R/. Hau eguna, hau, Jaunak egina,**
**gure poza ta gure atsegina.**

Edo: **Aleluia**.

Dad gracias al Señor, porque es bueno,
porque es eterna su misericordia.
Diga la casa de Israel:
Eterna es su misericordia. R.

La diestra del Señor es poderosa,
la diestra del Señor es excelsa.
No he de morir, viviré
para contar las hazañas del Señor. R.

La piedra que desecharon los arquitectos,
es ahora la piedra angular.
Es el Señor quien lo ha hecho,
ha sido un milagro patente. R.

**Kol 3, 1-4:**

San Pauloren bizitza guztia Kristo bizi dala iragartea izan zan. Bateatuta gagozanok, Jesusen biztueratik bizi gara eta ezin geintekez bizi geuk nahi dogun lez, Jesusen erara baino.

No despreciamos los bienes de la tierra, para nosotros se revalorizan a la luz de los “bienes de allá arriba”. El bautismo nos hace testigos de un nuevo estilo de vida cristiana.

**Jn 20, 1-9:**

Los apóstoles vieron y creyeron. Nuestra fe se asienta en el testimonio de los apóstoles. La fe también exige profundizar en el conocimiento

Prestau gaitezan Ebanjelioa entzuteko: Jesusen biztuerea iragarriko deusku. Goratu dagigun Jauna, "Aleluia"ren kantu alaiaz.




**BATEO-AGINTZARIAK BARRIZTATZEA** (ihinztatzea)

Atzo gauean bedeinkatutako uraz txipriztinduko gaitu orain abadeak. Ur honek Bateoa gogoratuko deusku eta orduan egindako agintzariak barriztauko doguz.

R/. Uko egiten deutsazue pekatuari, Satanasi eta haren egite guztiei? **—Bai UKO EGITEN DEUTSET**.

R/. Sinisten dozue Jainko Aita ahalguztiduna, Hare Seme bakar, Jesukristo, eta biengandik dan Espiritu Santua? —**BAI, SINISTEN DOT**.

R/. Sinisten dozu Eleiza, Santuen alkartasuna, pekatuen parkamena eta haragiaren biztuerea? —**BAI, SINISTEN DOT**.

(*Ur bedeinkatuaz txipriztindu*)

**Bateoko uretan, Jauna, gaituzu**
**pekaturako hil ta zeuretzat biztu.**

*—Bateoagaitik, / eskerrik asko, seme-alaba egin / gaituzulako.*

*—Bateoan ginan / hil Jesusegaz //geroztik gaitezan / bizi beragaz.*

Jaungoiko ahalguztidunak garbitu gaizala pekatutik
eta, Eukaristia honen bidez,
bere erreinuko mahaian jarteko gai egin gaizala. Amen.

## JAINKO HERRIAREN OTOITZA

Egin daigun otoitz, Jesus berbiztuaren Espiritua mundu osoaren gainean isuria izan daiten.

—Jesus berbiztuak gaur, mundu osoan, Pazkoa ospatzen dogunon fedea eta itxaropena sendotu daizan*, egin daigun otoitz*.

—Para que los cristianos nos dejemos llenar de la luz de Jesús resucitado y vivamos como testigos del Amor*, egin daigun otoitz*.

—Kristinauok eta borondate oneko pertsona guztiek txiroen, makalen bidebakokeriaren eraginak jasaten dabezanen, baztarketa edo indarkeriaren biktimen alde egoten jakin daigun*, egin daigun otoitz*.

—Por quienes formamos parte de la comunidad parroquial, para que seamos discípulos y misioneros del Evangelio*, egin daigun otoitz*.

Jaungoiko Aita, entzun gure otoitza Eleiza osoarentzako hain pozgarria dan egun honetan: emon onartzen zaitugunoi zure Seme Jesusen pazkoaren grazia askatzailea, parkatuak izatearen poza bizi daigun betiko. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

## PREFAZIOA

Beti emon behar deutsaguz eskerrak Jaungoiko Aitari; baina, gaur, aparteko eran: Jesusek heriotzea garaitu daualako eta amaibako bizitzearen bidea zabaldu deuskulako.

**Jaunartzean:** R/. **Bizi da Jauna, bizi da**! Bizi da Jauna, bizi da!

## AZKEN AGURRA

Que en nuestro andar no nos paremos ante los sepulcros, que cierran el camino, que el Señor no está allí. Él ha vencido la muerte.

Pazko Jaiei hasierea emon deutsegu; berrogeta hamar egunez luzatuko ditugu Pazko Jaiok, Jesusen biztuera eta geure biztuerea ospatuz. Elizatik urten aurretik, jaso dagigun Pazko eguneko Bedeinkapen Nagusia.

**ZERU-LURREN ERREGINA**: aleluia!, aleluia!
Biztu jaku Jesus Jauna: Aleluia!

—Zuregandik sortu dana: Aleluia.
Hilobitik zutitu da: Aleluia!

—Otoitz zure Semeari: Aleluia!
bizia deigun danori: Aleluia!